# Berso berriac zacurraren gañeran jarriac

1.

Berso berri bazuec
bearditut jarri
gaste jendiarentzat
entreteni garri;
zacurraren pasadisuac
esango ditut garbi
iñor abertencian
albaledi jarri.

2.

Zacur famatuada
icena du blanco
ezdauca mingunuric
artua jateco;
egunian bi libra
eman balizaco
puscarican etzuan
jan gabe utzico.

3.

Artoaquin bacarric
esdala contentu
ausora juan eta
olloac jan ditu;
jan gausaric
piñenac esagutzen
ditu arrauzac ere
beretzac billatzen badittu.

4

Bildos bat vasuan da
beste bi echian irurac
jancituan dembora guchian
gañera ardiari
seguitu atzian
gasqui eguiten zuanic
berac etzequian.

5.

Paluac eman nion
odoldu artian juisiuan
sartuda nere iretzian;
orain esda juaten,
ardien atzian quiriquisuac
billatzen ditu mais
sasian.

6.

Parre asco eguin
degu juandan neguan
nescacharen oyan billatu
genduan; nescacha
afalduta oyera zan
juan zacurrac oyaren
gañian mur mur
eguiten zuan.

7.

Nescacha bildurtuta
sucaldera larri
oyeco lagunari
etzion igarri;
arguia pistu eta
genduan ecusi
arrasoyarequin
etzuan jequi nay oyeti.

8.

Chasco polita
eguindu ausoco
eche batian
galdaratic buscantzan
lapurtu cituan
icusita ondoren
seguitu cioten
aleguiña eguiñarren
anchitu etzuten.

9.

San Prudencio
eguna celebratu
zuan bacalaua
genducan beratzen
potzuan gu acordatu
gabe gucia jan zuan;
cazara juangabe
pescan eguin zuan.

10.

Arratzaldea berritz
gaisqui pasatuzuan
sucaldeco galdarac
agortu cituan;
beste eran aldibat
eguindu potzuan
gacitasuna cerdan
aprobatu zuan.

11.

Gaba pasatu eta
urrengo goician
gure zacurra ceuan
estadu tristean;
ezurrenbat trabatuta
ceucala estian.

12.

Nagusia calera
juaten danian
echian gueldizenda
tristura aundia;
caletican echera
etortzen danian
danza eguitendio
gustora aurrian.

13.

Vistara echiaren aguertuta
cuan laister abiatzenda
bidian cantuan
erromarac eta eciac
pasauas saltuan
neu beitzat ain aguro
inola esin juan.

14.

Aurreco aldera juanda
buen venida ona
arpeguiyac miusten
lenbisico lana
Españetan bitsa ta
mingaña leguna
biurtu besteraco
hay ser lagun onac.

15.

Gastañac eta saldia
jaten dituanian puscar
asco eguitendu
basora bidean;
parres ito liteque
aren historian
pausoco bat edo bi
beti gueienian.

16.

Amasei bersorequin
orra despedida
gueyago esan bague
oyec asco dira
parre eguiteco
ipiniac dira
naiduanac icasi
guezurrac ezdira.

*Ceferino Múgica.—1889.*

EIBAR.—Imprenta de Orúe.